# NAZIOARTEKO PRESO POLITIKOEN EGUNA APIRILAK 17

## ADIERAZPENA

- 2004ko Donostiako Nazioarteko Konferentzian finkatu zen apirilaren 17a Nazioarteko Preso Politikoen Eguna bezala. Geroztik urtero aldarrikapen egun hau ospatzen da Euskal Herrian eta munduko beste herrialdetan.

- Presoen izaera politikoa beren borroka eta atxikimendu politikoak ematen du. Herriaren zapalkuntzak eta eskubideen urraketak sorrarazten du herritarren oldartze politikoa, erresistentzia politikoa.

- Zilegitasun osoa duen erresistentziak gatazka politikoa azaleratzen du. Gatazka politikoak konponbide politiko eta demokratikoa eskatzen du, elkarrizketa eta negoziazioaren bidez bideratu beharrekoa, eta herrien autodeterminazio eskubidea aitortuz.

- Konponbide politikoak preso politikoen parte hartzea ezinbestekoa du, haien ekarpena funtsezkoa bilakatzen baita. Preso politikoek eztabaidatu eta erabakiak har ditzaten ahalbideratu behar da. Dagozkien eskubideak bermatu.

- Gatazka sozial zein politikoak, nazio menperatuak eta diruaren logika zapaltzaileak, errealitate hau eraldatzeko konpromisora eraman ditu milaka militante. Horren ondorioa espetxea izaten da. Gaurko eguna baliatu nahi dugu preso politikoen eta herrien askapen borrokaren exenplu soil batzurekiko gure elkartasun osoa adierazteko; Palestina, Kurdistan, Sahara, Kolonbia, Txile, beste askoren artean, errealitate gordin honen adierazle dira.

- Preso politikoekiko jazarpena eskubideen urraketan eta legedi berezietan oinarritzen direla salatzen dugu. Gatazken konponbidea ahalbidetzeko, beharrezko neurria da legedi hauek indargabetzea.

- Azken bi hamarkadetan konponbidean jarritako bi gatazka gogor, ekarri nahi ditugu gogora. Hego Afrikakoa eta Ipar Irlandakoa. Borondate politiko eta demokratikoak emaitza positiboa ekartzea posible dela azpimarratzeko.

- Ez da beste hainbat herrietako kasua tamalez. Ezta Euskal Herrikoa ere ez. Ezker Abertzaleak estrategia aldaketa burutu du. ETA Erakundeak urte t'erdi dagoneko borroka armatua amaitutzat eman duela. EPPKk Ezker Abertzalearen hautu politikoa berretsi egin du, haren alde bultzada

ekarriz. Gobernu Espainiar eta Frantziarrak aldiz, egoera politiko berrira egokitu gabe jarraitzen dute errepresio bidearekin jarraituz.

- Preso politikoen izaera ukatzea, gatazka politikoa ukatzea da. Gatazka politikoa aitortu egin behar da, gatazkak sortutako sufrimendu, kalte eta ondorio oro konpontzeko ezinbestekoa baita.

- Preso politikoen kaleratzeak gatazken konponbidea errazten duela azpimarratu nahi dugu.

- Guk, Kolonbia eta Kurdistanen bezala, beste gatazkak, Euskal Herria, Kortsika, Palestina, Sahara, etabar… konponbidean jartzeko deia luzatzen diegu:

  -Estatu ezberdinei, bake iraunkorrari, justiziari aukera eman diezaioten

  -Estatu ezberdinei, presoek hautaturiko ordezkarien parte hartzea bermatzeko baldintzak ahalbidetzea.

  -Herriei, eragile sozial-politiko ezberdinei, norabide horretan bultza dezaten

  -Nazioarteko komunitateari bide urrats horiek susta eta babes ditzan

  **2013ko apirilaren 18an**